# Kabiliera

**Kabiliera**[1] (*taqbaylit* kabilieraz) batez ere Aljeriaren iparraldean mintzatzen den amazigeraren aldaera da. Hizkuntzaren izena Kabilia eskualdeari loturik[2] dago. Aljerian 2,5 - 6 milioi hiztun ditu; eta Europako diasporan ere mintzatzen denez, guztira 8 milioi inguru dira. Kabilieraren hiztunak hirueledunak dira eskuarki, arabieraz eta frantsesez ere jakin ohi badakitelako gehienek.

Irrati aljeriarraren bigarren programa kabilieraz ematen dute eta XX. mendearen amaieratik berezko literatura garatzen ari da. Hizkuntzaren erdigune tradizionala Tizi Ouzou da.

Lehen arabiar idazkera erabiltzen zen kabiliera idazteko; gaur egun, ordea, latindar alfabetoa dago hedatuago.

| Kabiliera | |
|---|---|
| taqbaylit — Taqbaylit | |
| Berbere hizkuntzen hedapena. | |
| **Datu orokorrak** | |
| **Lurralde eremua** | Aljeria; Europako diasporan |
| **Hiztunak** | 2,5 - 6 milioi |
| **Eskualdea** | Kabilia |
| **Hizkuntza familia** | |
| hizkuntza nostratikoak<br>afroasiar hizkuntzak<br>Amazigera<br>Northern Berber languages (en) | |
| **Informazio filologikoa** | |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-2** | kab |
| **ISO 639-3** | kab |
| **Ethnologue** | kab (http://www.ethnologue.com/language/kab) |
| **Glottolog** | kaby1243 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/kaby1243) |
| **Wikipedia** | kab (https://kab.wikipedia.org) |

## Eduki-taula



## Gramatika

### Izenak eta adjektiboak

Beste afroasiar hizkuntzek bezala, kabilierak bi genero gramatikoak ditu, femeninoa eta maskulinoa. Beste berber hizkuntza gehienetan bezala, izen eta adjektibo maskulinoak bokal batez hasten dira (a, i, o) eta izen femeninoak, berriz, t batez hasten eta amaitzen dira oro har (salbuespenak salbuespen). Izen femenino gehienak maskulinoen forma feminizatuak dira, azken batean.

Adibideak:

- *aqcic* "mutil bat", ***t**aqcic**t*** "neska bat".
- *amɣar* "agure bat", ***t**amɣar**t*** "atso bat".
- *argaz* "gizon bat", ***t**ameɣu**t*** "emakume bat".

Izen singularrak *a* batez hasten dira oro har, eta ez dute atzizkirik. Izen pluralak *i* batez hasi ohi dira, eta askotan badute atzizki bat, hala nola -*en*. Hiru plural mota daude: kanpokoa, barrukoa eta mistoa.

- Kanpokoa edo "erregularra": hasierako bokala aldatu eta -*n* atzizkia gehitzean datza.

  *amɣar* "agure bat" →; *imɣaren* "agure batzuk".
  *afus* "esku bat" →; *ifasen* "esku batzuk"
  *argaz* "gizon bat" →; *irgazen* "gizon batzuk"

- Barrukoa: hitzaren barruko bokalak aldatzean datza:

  *adrar* "mendi bat" →; *idurar* "mendi batzuk"
  *amicic* "katu bat" →; *imcac* "katu batzuk"

- Mistoa: bokal aldaketa eta -*n* atzizkia:

  *igenni* "zerua" →; *igenwan* "zeruak".
  *aẓar* "sustrai bat" → *iẓuran* "sustrai batzuk"

Bi kasu gramatiko existitzen dira: bata, *estatu librea*, markatugabea da; eta bestea, *estatu konstruktua*, ergatibotzat edo preposizio baten objekturako erabiltzen da.

Bigarren kasu hori hiru arau hauetako bati jarraituz eratzen da:

Lehenengoa hasierako *a u* bihurtzean datza:

> amaziɣ → umaziɣ "berbere bat"
> ameqqran →; umeqqran "handi"
> adrar →; udrar "mendi bat"

Bigarrena izen femenino batzuen lehenengo bokalaren galeran datza:

> t**a**mɣart → t**e**mɣart "emakume batzuk"
> t**a**mdint → t**e**mdint "hiri bat"
> t**a**murt →; tmurt "zelai bat"

Hirugarrena hitzaren hasieran semibokal **((w** edo **y))** bat gehitzean datza:

> asif →; **w**asif "ibai"
> aḍu → **w**aḍu "haize"
> iles →; **i**iles "hizkuntza"
> uccen →; **w**uccen "txakal"

Izen batzuk, baina, ez dira aldatzen.

*Estatu konstruktua* perpausetan euskaraz ergabtiboa bezalaxe erabiltzen da:

- *Estatu librea*: *Yewwet **a**qcic*. "Haur bat kolpatu du".
- *Estatu konstruktua*: *Yewwet **we**qcic*. "Haurrak kolpatu du".

Preposizio baten ondoren ere estatu konstruktua hartzen du hitzak:

- **A**man ("ura"), Kas n **wa**man ("baso bat ur").

# Kanpo estekak

- Kabilierazko Wikipedia (https://kab.wikipedia.org/wiki/)
- **(Frantsesez)** Kabilieraren gramatika (https://archive.is/20130125104816/sites.google.com/site/tamazight/sahki-hacene/tira-sahki)
- **(Ingelesez)** Ethnologue kabilierari buruz (http://www.ethnologue.com/show_language.asp?code=kab)

| | |
|---|---|
| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q35853 · Multimedia: Kabyle language (https://commons.wikimedia.org/wiki/Category:Kabyle_language)<br>**Identifikadoreak** · BNF: 11974973z (https://catalogue.bnf.fr/ark:/12148/cb11974973z) (data) (http://data.bnf.fr/ark:/12148/cb11974973z) · GND: 4403355-2 (https://d-nb.info/gnd/4403355-2) · LCCN: sh85071233 (https://id.loc.gov/authorities/sh85071233) · NDL: 00564364 (https://id.ndl.go.jp/auth/ndlna/00564364) · **Hiztegiak eta entziklopediak** · Britannica: url (https://www.britannica.com/topic/Kabyle-language) |

# Erreferentziak


1. ↑ «- Toponimia - Euskal Onomastikaren Datutegia (EODA)» (https://www.euskaltzaindia.eus/index.php?option=com_eoda&Itemid=472&view=exonimia&nonkodea=8.1.02&lang=eu) *www.euskaltzaindia.eus* . Noiz kontsultatua: 2019-05-03.
2. ↑ «- Toponimia - Euskal Onomastikaren Datutegia (EODA)» (https://www.euskaltzaindia.eus/index.php?option=com_eoda&Itemid=472&view=exonimia&nonkodea=8.1.02&lang=eu) *www.euskaltzaindia.eus* . Noiz kontsultatua: 2019-05-03.

